# EUSKAL HERRIA BILDUZ

# BORROKATUZ ETA BOZKATUZ

Euskal Herria abagune berezian aurkitzen da. Mundu mailako krisi ekonomikoarekin batera, Frantzia eta Espainiarekiko lurralde ereduaren krisi politikoa bizi dugu. Krisia aukeran bilakatu beharra dago. Unearen garrantzia horretan datza.

Egoera politiko berriak ez du aitzitik Estatuon jokabide zapaltzailea eten eta ez ditu oraindik gatazka konpontzeko norabidean kokatu. Bada, blokeoa pitzatzen hasteko testuinguru aproposa dugu hilabeteotakoa, hautets lehia tartean.

Azken hauteskundetan jasotako babesak indar metatze berritua ekarri behar du eta baldintzak sortu erronka berrietarako. Europan Estatu berrien independentziaren aukera bizia baliatu egin behar baitugu. Gasteizeko eta Iruñeko legebiltzarrak Espainiako egitura administratibo agortutik, Euskal-Nafar Estatuaren egitura independientearen norabidean jartzeko. Borroka eta bozka, aukera politiko bakarrari eskaintzen dizkiogu, Euskal Herria Bilduri. Gure momentua da, gure esku dago!

Aurrez aurre dira, Euskal Herria zatitu eta hondoratze bidean jartzen duen eredu agortua indartzera datozen aukerak. Urkulluren PNV kohabitazioaz eta paktuaz mintzo zaigu, hautu estrategiko okerrean barrena. Ezker-eskuineko espainiar indarrekin eskuz esku, euskal herritarrak 'espainolizatuz' prozesu politikoa usteltzera eraman nahi duten horiekin. Euskal Herria Espainiaren hondamendira kondenatuz.

Hain zuzen PNVren ezinbesteko laguntzaz abiatutako sakabanaketa indarrean da. Sakabanaturik, deportaturik eta eskubideak oro urraturik jarraitzen dugu. Ez du oraino bere erantzukizuna arintzeko indarrik egin. Sakabanaketa eta salbuespen egoera guztiak orain amaitu beharra daude! Datozen hilabeteotako mobilizazioekin bat eginez, jendetsu bezain eraginkorrak izan daitezen, indarrak askatzeko deia luzatzen diogu euskal jendarteari.

Euskal Presoak, Euskal Herrira! amnistia-autodeterminazioa!

Euskal Herria bihotzean, 2012ko urrian

**Euskal Preso Politikoen Kolektiboa**